# Euskal Herria nazio gisa biziraunteko GUDAN



Bai Euskal Herriari

## Naziotasun eskubidearen inguruko gogoeta



# Euskal Herria
## nazio gisa **bizirauteko** gudan

Frankoren diktadura garaitik, debekuaren, jarraipen eta kastigu garaietatik, garapen handia izan du Euskal Herria desagertarazteko estrategiak.

Azken hamarkadetan burujabetza sentimendua, nahia eta borondatea estatu espainiarretik ongi diseinaturiko autonomiaren joko zelai batean ito nahi izan dute.

Euskal identitatea, Urez beteriko edalontzi batean azukre koxkorra bailitzan desegin nahi izan dutela esan dezakegu.

Euskal Herria burujabe izateko hautua ez dela desegin ikusirik, zatiketa eta desitxuratze estrategiak ere abiatu dituzte.

Horren adibide da, aitzakia bat edo beste erabiliz, euskal nortasuna biltzen dituzten indarrak zatikaturik izateko demak ez duela etenik izan.

Azken urtetan berriro, aurrez aurreko nortasun guda abiatu dute. Zeharka disolbatu ez duten sentimendu eta identitatea kriminalizatu eta kolpeka desegin nahian.

Hor kokatzen ditugu, euskal komunikabideen aurkako erasoak, eragile, instituzio eta alderdien ilegalizazioak eta nola ez, independentzia bezalako aukera politikoen kriminalizazioak edota euskal selekzio ezberdinek azken urteetan emaniko aurrera pausoak zapuztu izanak.

Bide beretik indar osoz abiatu dute euskal sentimenduaren aurkako gurutzada:

Inposaturiko banderekin, hezkuntzatik, kale izendegietatik, atzerriko selekzioen mehatxutik, **espainiar ikuspegi eta nortasuna ardatz duen XXI. Mendeko gurutzada berri baten atarian gaude. Euskal Herriaren aurka denak balio duen garaian.**

*gure nazio identitatea desegitea lortu ez dutenez, zatiketa eta desitxuratze estrategiak abiatu dituzte.*

*espainiar ikuspegia eta nortasuna txertatzea helburu duen XXI. mendeko gurutzada baten aurrean gaude*



# Zergatik diogu **nazioa** garela?

Naziotasuna bandera bat, ikur bat, estatus politiko bat edo gabonetan jokatu daitekeen partidu bat izatetik haratago doa. **Nazio izatea elementu ezberdinen gainean oinarritzen den errealitatea da.**

Naziotasun ulertzeko modu eta forma ezberdinak aurkitu ditzakegu munduan barna.

Badira naziotasuna, arrazari soilik lotzen dioten herriak, baita lurrari edo lurraldeari lotzen diotenak ere. Zenbait herrik erlijioa eta historian oinarritzen dute beraien nazio izatea

Euskal Herrian **hiru elementu edo ardatz nagusiren gainean oinarritzen dugu, gure nazio izatea:**

***Euskal Herriaren historia:**
Historian zehar, euskal nazioa modu burujabe eta independiente batean eratu izana eta gure erreinu zaharra garai batean aitortua izateak pisu handia du naziotasuna ezaugarritzeko garaian.

*** Euskal lurraldetasuna:**
Gure historia, nortasuna, kultura eta nazio identitatea betidanik zuzenean erroturik egon izan da bizi garen lurraldearekin.

*** Identitatea eta nortasuna:**
Hizkuntza, kultura, ohiturak, bizi ereduak, …euskal komunitatearen ezaugarriak propioki herri edo nazio egiten gaituzten elementuak dira.

***euskal naziotasuna hiru ardatzetan:***
** Gure historia*
** Lurraldetasuna*
** Nazio identitatea eta nortasuna*




**BAI EUSKAL HERRIARI:**
*nazio izatea aldarrikatu, irudikatu eta sustatzean datza gure lanak*

## BAI EUSKAL HERRIARI 10 URTE LANEAN

Ekimenak egingo dituen hamar urteetatik zazpitan, Euskal Herriko Naziotasun Aitormenaren inguruko lanean sakondu du. Finean naziotasuna eskuratzeko tresna gisa EHNA izateak, beste eskenatoki baten sorreran indar egitea bai zekarren berekin.

Euskal Herriaren nazio izatea tresna bakar batera mugatzeak tresnaren eraginkortasuna mugatzen zuenaren oharpena oinarri hartuta; Naziotasunaren inguruko ikuspegia eta praktika zabaltzeari ekin diogu.

**HELBURUAK**

Euskal Herriaren eskubide zibil eta politikoen aldeko herri ekimen gisa sortu zen BAI EUSKAL HERRIARI 2000. urteko ekainaren 10ean. Bide honetan Euskal Herriaren eta euskal herritarron nazio eskubideen inguruan sakondu du bere lana.

Gaur egun BAI EUSKAL HERRIARI ekimenaren helburu nagusia Euskal Herriaren nazio izatea aldarrikatu eta euskal herritarron nazio eskubideak errespetatuak izatean datza.

Aldarrikapenetik eskubide hauek praktikan errespetatuak izateko bidea egiteko, indarrak bildu eta egitasmoak antolatzean datza gure lanak.

**FUNTZIOAK**

Euskal Herriaren nazio izatea ukatua den unean aurkitzen gara. Une honetan Euskal Herriaren nazio izatea aldarrikatu, irudikatu eta sustatzean datza gure funtzio nagusia. Horretarako nazio gisa ikusi pentsatu eta jardutea dagokigu.

Herriz herri egin beharreko lanean oinarritzen da gure ekimena. Jendartea antolatu, landu eta aktibatzean hain zuzen.

# nazio gisa **ikusi, pentsatu eta aritzeko**

Orain arte naziotasuna ezaugarritzen dugun hiru elementuen inguruko lanketa modu bakanean gauzatu izan da.

Alegia elementu historikoak lantzen dituztenak, lanketa historikoan bakarrik sakontzen dute. Eztabaida termino historikoetan kokatuz esklusiboki.

Elementu kulturalak lantzen dituztenak, kultur esparru eta kultur helburuei erantzuten diote bakarrik. Maila batean lanketa politikoak saihestuz.

Esparru politikoan eta subjektiboan (borondateari loturik) lanean dihardutenek naziotasuna eremu politikora mugatzen dute, askotan esparru instituzionalera mugatuz, maiz elementu historikoak edo kulturalak albo batera utziaz.

**Naziotasuna esparru bat izatetik haratago doan ildoa da.** Esparru ezberdinetatik lantzen da naziotasuna, **nazio eraikuntza gauzatu ahal izateko ezinbestekoa den esparruetako bat da.**

Finean gaur egun hainbat dira nazio eraikuntzaren norabide berean doazen egitasmoak, baina ez horrenbeste ikuspegi nazional bat oinarri hartuaz abian direnak.



*Adibidez:* Euskal Herrian esparru sozioekonomikoa landu daiteke ikuspegi nazionala izan gabe, aldiz Euskal Herriko esparru sozioekonomikoa ezin daiteke eraiki nazio ikuspegirik gabe. Finean lurralde ezberdinetako egoera, ezaugarriak eta arazoak hartu behar direlako oinarri.

*Bigarren adibidea:* Euskara landu daiteke, zabaldu, baina Euskal Herriko hizkuntza nazionala dela oinarri izan gabe, ez dugu lortuko Euskal Herri euskaldun batean inoiz bizitzerik.

**Naziotasunaren inguruko ikuspegi osoa lantzea falta da.** Aipatu bezala nazio izatea agerian utzi edo aldarrikatzen dituen egitasmoak anitz badira ere. Nazio bat garela esateaz gain, nazio gisa pentsatu, sentitu eta jardutea falta zaigu.

Hau honela izan dedin, naziotasunaren barnean kokatzen ditugun adarren gainean sakontzen saiatuko gara. Bai eta naziotasunari lotzen zaizkion bestelako esparruetan izan beharreko ikuspegian sakontzen ere.

Nazio gisa erasotuak izatearen potentzial handiena oharpen ezaren baitan kokatzen da. **Nazio sentimendua izan arren, nazio ikuspegirik ez duenarentzat ez bai dago kasik egiturazko erasorik.**

Zatiketa administratiboaren bidez, Euskal Herriaren errealitatea deusezten dute eta bide batez errealitate berri bat sortzen.

Adibidez Nafarroa Garaiko herrialdea, errealitate administratibo gisa sustatuaz, euskal nortasunaren aurkako errealitate gisan proiektatzen dute.

Frantziar gobernuak, ipar Euskal Herriko hiru herrialdeak, erretiro leku gisa saltzen ditu. Bertako identitate zeinuak, tokiko folklore erakustaldi gisa barnebiltzen ditu bere eskaintzaren baitan itoaz.



## Nortasun ikurrei buruz hausnartzen

Ikurren sorrera kokatu beharko bagenuke, gizaldiaren sorrerara gerturatu beharko ginateke.

Aztarnak interpretatu eta modu kontziente batean erabiltzen hasi ginen garaira eramaten gaitu adierazpen honek.

Euskal komunitatean kolektibotasunaren kontzientzia sortzen denetik **gaur egun arte, ikurrek izan duten garapen eta garrantziaren agerpen xume bat egin nahi dugu.**

Munduko beste hainbat herriek egin izan duten bezala, gure herriak ere **nortasun ikurrak sortu eta erabili izan ditu gure nortasuna iraunarazteko.**

Beraz, ez dago ikur onik edo txarrik; ez eta ikur zuzenik edo okerrik. Hainbat ikurrek ere beren garapenak izaten dituzte denbora eta egoera ezberdinen ondorioz.

Batzuetan garapen hauek fisikoki ikurrari eragiten diote eta beste batzuetan aldiz ikurraren esan nahian edo ikurrak beregain daraman zaman eragiten da aldaketa.

# nazio baten NORTASUN IKURRAK



## euskal nortasun ikurrak?

Galdera hau nork eta non egiten duenaren arabera erantzuna bata edo bestea izango da.

Adibidez, munduan zehar euskaldunoi errazen atxikitzen zaigun ikur ezagunenetako bat, Guernica koadroa, ez zuen euskal herritar batek sortu.

Baina ez da bakarra: esku pilota edo harri-jasotzea bezalako kirolak ere izan badira gure herriaren ikur; bestelako ikur batzuk ere izan litezke, jantzi edo itxurari loturikoak, soinu edo soinu tresnei loturikoak eta zergatik ez gure izaerari loturiko hainbat topikoek eragindakoak.

*Adibidez:* palabra de vasco edo munduko hainbat lurraldetan euskal herritarren migrazioaren eraginez harturiko langile izaeraren ingurukoak.

Hala ere guztien artean nabarmentzen da euskara, hizkuntza bera euskal nortasun eta izatearen ikur garrantzitsuena izan da eta da gaur egun ere.

Ikusi dezakezuen modura nortasun ikurrak, bandera edo ereserki zehatz batzuetatik haratago doazen zeinuak dira.

Hala ere ukaezina da armarriek, zigiluek, banderek edo ereserkiek beste hainbat ikurren aldean balore eta pisu nabarmenagoa izan dutela eta egun dutela.

## zergatik inposatzen dizkigute gureak ez diren nortasun ikurrak?

Ikur arrotzen *ohiko* inposaketa, gure nortasun ikurren desitxuraketarekin uztartu dute.

Batzuetan oso modu nabari eta ikusgarrian, hala nola, ikur espainiar zein frantziar ikurra edonon jarriaz, eta beste batzuetan oso modu ezkutu eta disimulatuan, honen adibidea izan daiteke EITB-k berriak emateko erabiltzen duen sekuentzia: estatua, EAE eta Nafarroa eta Ipar Euskal Herria. Edo zer esanik ez, azken urtean eguraldiaren mapa lau aldiz aldatu izanaren inguruan.

Edonola izanda ere, **asimilaziorako bidean jarritako lehen urrats moduan ulertu behar ditugu inposaketa hauek.**

Estatu espainolaren aldetik batik bat, jauzi kualitatibo handiak emateko prestutasuna agerian jartzen




dute, bestela nola ulertu TSJPVak sinaturiko sententzia zeinetan Euskal Herria terminoaren barruan Nafarroa sartzea debekatua eta legez kanpokotzat jotzen duen?

Euskal Herria vs Euskadi, izenetik haratago doan auzia dugu. Gero eta nabarmenago da zein den guztiaren muina, eta gure egin beharra da lehenengo identifikatu, gerora agerian utzi eta azkenik salaketa dinamika abiatu eta bukaerara eraman.

# MIGRAZIOAK eta ANIZTASUNA
# Euskal Herritik eta Euskal Herrira



Estatu espainiar eta frantsesetik Euskal Herrira etorririko migrazio ohiturek, egituraketa sozialean eragin handia izateaz gain eragin zuzena izan zuten nazio identitateen arteko dinamiketan.

Bi migrazio mota hauek oso ezberdinak dira beraien artean: Hegoaldetik etorririko migratzaileen arrazoi nagusia ekonomikoa den bitartean iparraldetik eratorririkoaren arrazoi nagusia erretreta eta ikuspegi turistikoan aurkitu dezakegu. Honek eragin eta ondorio ezberdinak sortzen ditu Euskal Herrian, beraz trataera eta erantzun ezberdinak eskatzen ditu kasuan kasu.

Migrazio joera honi gaur egungo joera berriak gehitzen zaizkio. Gaizki deituriko, *inmigrazio berria* edo *estra komunitarioa* bezala izendatzen da. Batak zein besteak, eragin anitz bezain konplexuak sorrarazten ditu.

Batetik, komunitate bat eta bestearen arteko ezberdintasunek populazioaren jaitsiera geldiarazi eta garapen produktiboren beharrak hasetzen dituzte.

Baina bestetik, Euskal Herriaren berreskurapen kultural, identitario, hezkuntza eta hizkuntza normalkuntzarako indarrak biderkatzearen beharra sorrarazten dute.

Bide horretan egun Euskal Herrian sustatu nahi den marko aldaketarako prozesuan, zuzenean eragiten dute.




## ANITZAK: Atzerriko jatorria duten euskal herritarren elkartea




Anitzak ekimena Euskal Herritik kanpo etorritako pertsonez osatutako herri ekimen bat da, jatorriak askotarikoak izanik; espainiar eta frantses estatuetako herri ezberdin, Europa Batasuna eta Europa Batasunaz kanpoko lurralde eta herri anitzekoak.

Anitzakeko kideak pertsona migratzaileen eskubideak eta Euskal Herriari nazio gisa, dagozkion eskubideak bateragarriak direnaren ideian oinarritzen dira.

Anitzaken lana aldarrikapen horien defentsara zabaltzen da. Lan hori herrien arteko aitortza politikoa, kulturala, identitarioa, historikoa, ... aurrera eramateko baldintzak sortzean datza.

Baldintza horiek **elkarren aitortzan** oinarritzen dira:

Batetik, hona bizitzera etorri diren migratzaileak Euskal Herria, nazioa existitzen dela jakin eta onartzea, eta beraz, nazio bezala dagozkion eskubideak (politikoak, sozialak, kulturalak eta linguistikoak) aitortzea.

Bestetik, euskal jendarteak, migratzaileen historia, hizkuntza, kultura, identitatea, eta berezko naziotasuna, duten subjektu gisa onartuak izatea, eta, onarpen honekin batera, Euskal Herriko eskubide osoko herritar bezala aitortuak izateko jatorrizko identitate horri uko egitera behartuta zertan egon ez dutela adieraztea.



# Euskal Herriko KIROL SISTEMA NAZIONALA

Euskal Herriko kirolariak, kirol talde zein elkarteak, kirol estamentuak,… guztiak barnebilduko dituen eta **Euskal Herria oinarri zein helburu izango duen kirol sistema propioa eraiki behar dugu.**

Kirol sistema kudeatuko duen tresna honen helburua garbi dago:

Batetik, Euskal herriko kirolariak eta kirola bera Euskal Herria oinarri izanik antolatzea eta bestetik Euskal Herriak munduaren aurrean bere burua aurkezteko behar dituen selekzio nazionalak izendatzea.

Euskal Herriko Kirol Sistema Nazionalaren arrautza erruten ari da, lantzen; eta bien bitartean ezin gara eskuak gurutzaturik egon.



**Gaurtik bertatik, Euskal Herria oinarri duten txapelketa, froga eta ikuskizunak sustatu eta Euskal Herria ukatzen edo zatitzen dutenak salatuko ditugu.**




**EUSKAL HERRIKO KIROLARIAK**
*pausoz pauso AURRERA!*

Euskal kirolariek lehen pertsonan sufritzen dute gure herriaren zapalketa.

Euskal Herri osoko kirolariak biltzearen eta antolatzearen emaitza da Euskal Herriko Kirolariak (EHK).

Euskal Herri gisa jardun eta antolatzeko bitartekoak sortu, eta indar egiteko determinazioa du EHK-ek.

Munduaren aurrean, Euskal Herria ordezkatu ahal izateko, kirol federazio nazionalak behar dituzte eta norabide horretan pauso zehatzak emango dituzte.




**ESAIT** *Euskal Selekzioaren Aldeko Iritzi Taldea.*

Betidanik gure kirolariek beren nortasuna izan eta aldarrikatu badute ere, ESAIT izan da azken hamarkadetan sentimendu, nahi eta gogo hori artikulatu duen eragilea.

ESAITek kirolariak, kirol zaletuak eta nazio sentimendua duten herritarrak bildu eta antolatu ditu.

EHK sortuta ere, ESAITek Euskal Herriko kirol sistema sortzeko indarrak biltzen jarraituko du.

Bide horretan gure kirolariak defendatu eta eskubide zapalkuntzak salatzen jarraituko du ESAITek.




**BAI EUSKAL HERRIARI**
*nazio bat garelako kirolariekin bat!*

Naziotasuna bere ikuspegi zabalenetik eta modu osagarri batean hartuta, BAI EUSKAL HERIARI ekimenak nazio ikuspegia duten beste esperruetako herritarren babesa eta konpromisoa artikulatuko du.

Euskal Herriko kirol sistema propioa sortze bidean, indarrak bildu eta aldarrikapena herriz herri zabaltzeko konpromisoa bere egiten du.

EHKekin eta ESAITekin elkarlanean jardungo dugu norabide eta helburu berarekin.

# Euskal Herriak
# EUSKAL EGUTEGI PROPIOA

Gaur egun Euskal Herriaren bizi erritmoa, jai egunak, ospakizunak, …guztia gurea ez den egutegi baten arabera finkatzen digute.

Finean ez gara egutegi batez mintzatzen, bi edo hiru egutegiz ari gara, beraz nazio bakar baten baitan sortu nahi dituzten bi edo hiru errealitatez ari gara.

Egutegi ezberdinak, errealitate ezberdinak sortzea dute helburu. Herri bezala aritu ahal izateko, oztopo nagusiena errealitate ezberdinen arteko ezin eramana izaten da eta hori ondo daki zatikaturik gauzkanak. Horregatik egutegiekin errealitate ezberdin horietan sakondu besterik ez dute egiten.

Egun, Euskal Herrian ezin dugu egutegi propioa erabaki, ezin dugu gure erritmoa zehaztu, gure oraina eta etorkizuna erabakitzeko eskubidea ukatzen digutelako.

Hala ere inposaketaren aurrean eta gure egutegiak duen garrantzia azpimarratzeko, gure erritmo eta egutegi propioa irudikatzeak berebiziko garrantzia du.
Horregatik inposaturiko egutegia salatu eta gure jai egunak aldarrikatu eta abian jartzera goaz.

## Egutegi propioa aldarrikatu eta irudikatzeko gure jai egunak

Iritsiko da eguna euskal herritarrok gure etorkizuna erabaki ahal izango duguna. Gure historia, nortasuna, borondatea eta beharren arabera gure egutegi propioa erabaki eta gauzatuko duguna. Gaur egun ez dugu tresna eta bitartekorik euskal egutegi propioa adostu eta indarrean jartzeko.

**Nazio gisa batzen gaituzten jai egunak aldarrikatu eta inposaturikoak salatuko ditugu.** Bide horretan UDALBILTZAk eginiko ekarpena dugu:




### EMAKUMEON EGUNA

Gure historian, komunitatearen antolakuntzan emakumearen paperak berebiziko garrantzia izan badu ere diskriminaturik jarraitzen du.

Egoerari buelta emateko bokazioarekin nazioarteko eguna jai egun izendatzen dugu.




### UDAKO SOLSTIZIOA

Euskal Herrian mendeetan mantendu izan da ospakizun hau. Gure arbasoengandik jasoriko ondare gisa gorde eta ospatzeko asmoarekin ber-hartu nahi dugu jai garrantzitsu hau.

### EUSKARAREN EGUNA

1949an ospatu zen lehenengoz Euskararen eguna.




Bestalde Nafarroaren eguna bezala ere ezagutzen da. Batetik zein bestetik euskal herritarrontzat jai garrantzitsua da.
Abenduaren 3an badugu zer ospaturik Euskal Herri osoan.

## Naziotasun arrotzen baitan inposatzen dizkiguten jai egunak

2009an Hego Euskal Herriko **zatiketa administratiboan sakontzeko asmoarekin. EAEko eguna izendatu dute urriaren 25a,** indar gabeko ospakizun bat burutu zuten, baino ahaztu ezin duguna, **Euskal Herriak dituen nazio eskubideen aurkako zapalkuntzaren isla zuzena dela.**


















# EHNA
# Euskal Herriko Naziotasun Aitormena

UDALBILTZAk, euskal herritarron eskura jarri digu **gure naziotasuna boluntarioki eta ofizialki jasotzen duen tresna.**

Tresna diogu, Euskal Herria bere naziotasuna ukatua zaion herria izanik, ukazio hori gailendu eta bertako herritarrok, **naziotasun horren jabe garenok, gure izatea agertaraziz gure nazioarena ere agertzen bai dugu.**

Emeki-emeki esparruak irabaziz euskal naziotasunak pairatzen duen harresia gainditu eta egunerokoan euskal naziotasunak onarpen eta errespetu osoa izan dezan pausoak emateko tresna guztiz baliogarria da EHNA, bai Euskal Herrian nola mundu zabalean.

Horregatik, **EHNA lehentasunezko tresna dela uste dugu nazio eraikuntzan. Nor garen eta zer garen agertzeko, herritar eta herri bezala.**

Gaur egun errepresioa medio, UDALBILTZAren egoera ez dela onena esan dezakegu, horren adibide, Espainiako Auzitegi Nazionalean abian den epaiketa.

Egoera honen ondorioz, EHNAren tramitazioak etenda daude. Nazio instituzioak, laster gaia ber-hartuko duelakoan gaude.






## UDALBILTZA: Euskal Herriaren bizkar hezurra

2001. urteko martxoan UDALBILTZAk, Euskal Herriko Naziotasun Aitormena, EHNA bideratzea erabaki zuen.

Agiri honen bidez “euskal herritarrek libre eta demokratikoki, euskal nazioaren partaide izan nahi dutela adierazteko eskubidea izango dute”. Aipatutako eskubidea “norbanakoena eta kolektiboena da eta gure kasuan ukatua izan zaigu” adierazi zuen UDALBILTZAk, hori bideratzeko konpromisoa berretsiz.




Bide horretan BAI EUSKAL HERRIARI eta UDALBILTZAk hitzarmena sinatu genuen 2005eko maiatzean.

Udalbiltza, Euskal Herriko Udal eta Udal Hautetsien Biltzarra izateaz gain, **zazpi herrialdetako euskal herritarron ordezkariez osaturiko lehen instituzio nazionala da**. Bide horretan hainbat eta hainbat euskaldunek urteetan amesturiko errealitaterantz abiaturiko zuhaixka da.

Gure ustez, EHNA tresna garrantzitsua izateaz gain, berebiziko garrantzia hartzen du Euskal Herriak aro modernoan ezagutu duen instituzio nazional bakarrak , Udalbiltzak zuzenean herritarroi eskaini digun agiri ofizial bakarra baita.

Horregatik ebaki nahi izan dute zuhaixka, horregatik auziperatu dute UDALBILTZA gure hitza eta erabakia errealitate bihurtzeagatik, etorkizuna gure esku dagoela erakusteagatik.

EHNA
Zuberoa Garatzen
Euskal Garapen eta Kohesio Fondoa
Diaspora
Eskubideen KARTA
EUSKAL HERRIA
Nazio Eztabaida Gunea
Nazio Garapen Biltzarra
Nazioarteko Konferentzia
Gaindegia
Behatok

# euskaldunak munduan
# *Ikurriña eskuan*




Euskal herritarrei esker, Euskal Herriko berri mundu osoan barna zabaltzen da . Munduan barrena ibiliz gero, gutxien espero duzun lekuan topa dezakegu herkide bat.

**Euskaldunok beti esan behar izaten dugu zer ez garen, beti diogu gu beste nazio bat garela.** Horretarako **Ikurriña tresna gisa hartzea proposatzen dizuegu.** Euskaldunok munduan barrena ezagutu eta bisitatu ditugun txokoak bildu nahi ditugu argazki bidez.

Euskal Herritik kanpo bizi bazara edo Euskal Herritik aterako bazara, ez ahaztu Ikurriña eramatea eta zoazen lekura joanik **bidali iezaguzu argazki bat, aldarrikatu Euskal Herriak nazio libre gisa bere etorkizunaren jabe izan nahi duela.**

Argazkiak jaso ahala, **www.baieuskalherriari.org** gunean zintzilikatuko ditugu zuen argazkiak eta komenigarria litzateke argazkiaren inguruko xehetasunak eta nahi izanez gero ohartxo laburren bat gehitzea.

Bidali zuen argazkiak **munduan@baieuskalherriari.org** helbidera, izenburu gisa *Ikurriña munduan* jarrita.




**HOLANDA** - Mikel M.



**TXILE** - Hiru goerritar



**INDIA** - Mikel eta Gaizka



**KATALUNIA** - Maider C.



**PERU** - Eñaut G.



**ESKOZIA** - Ander M.



**SAHARA** - Hodei S.



**ESKOZIA** - Argiñe M.

# nazio bat gara Geurea Ikurriña!

NAZIO BAT GARA, EUSKAL HERRIA 21.000 km² eta 3.000.000 euskal herritarrek osatzen dugu.

Gaur egun, bi estaturen baitan kokatzen duten euskal nazioa, lau administrazioetan dute zatitua. Gure izate eta nortasuna ezabatzea helburu izanik, oso modu eta forma ezberdinetan tratatzen gaituzte administrazio bakoitzaren baitan. Adibidez:

*Lapurdi Behe Nafarroa eta Zuberoan*; Ikurrina mamiz hustu eta folklorearen baitan ito nahi duten ikur gisa darabilte, betiere izaera ofizialeko kokagunetatik urrun.

*Nafarroa Garaian;* Ikurrina legez debekaturiko ikurra da. Beraz ez dago euskal ikur hau eraikin publikoetan agertzerik. Gainera, lurralde hori kudeatzen duten administrazioetatik, eraikin publikoetan espainiar ikurra jartzera behartu dituzte.

*Araba Bizkaia eta Gipuzkoan* berriz, Ikurrina, Espainiar agintearen menpeko ikurra dela agertu nahian, legez behartu nahi gaituzte instituzio publiko guztietan Ikurrinaren alboan Espainiar bandera jartzera. Dagoeneko luzeegia da Espainiar ikurra zintzilikatu duten udal eta instituzioen zerrenda.

Euskal Herria desagerrarazteko edozein arma erabiltzeko prest daude; horien artean ikur arrotzen inposaketa eta gure ikurren desitxuratzea nahiz debekua darabilte.

GEUREA IKURRINA! Ikurrinak Euskal Herri osoa eta euskal gizartearen gehiengoa batzen duen bitartean, Espainiar banderak, inposaketa, errepresioa eta erabakitzeko dugun eskubidearen ukazioa barnebiltzen ditu.

Hego Euskal Herrian, gatazka eta talka sortzaile den ikurra da bandera espainiarra. Horregatik gure ustetan, euskal instituzioetan Ikurrinak egon behar du beste euskal ikurrekin batera eta ez inposaturiko atzerriko banderarik.

Inposaketa honi erantzutea euskal herritar orori dagokigu eta Euskal Herri osoan dagokigu euskal nortasun ikurren defentsa burutzea. Gaurtik aurrera euskal nortasun ikurren alde eta inposaketaren aurka kompromezu zehatzak hartu behar ditugu.




## Euskal Herriko nortasun ikurren defentsa eta aldarrikapena

Euskal Herriko ikur nazionala Ikurriña da.

**Erabili dezagun,** ekitaldietan, gure herria ordezkatzeko, burujabetza aldarrikatzeko, munduaren aurrean agertzeko, jaietan zintzilikatzeko...

**Gure izena eta izana lotzeko.**




## Inposaturiko ikurren aurrean tinko, desitxuraketa salatu.

Espainiar eta frantses ikurrek **ez dute lekurik Euskal Herrian.**

**Ez dugu onartuko,** Euskal Herriaren okupazioa eta ukazio ordezkatzen duten ikurrik gure herrian.

Euskal nortasun **ikurrak desitxuratzeko saiakerak ez du etenik.**




## Nazio bat garenaren ikuspegi eta praktika integrala sustatu.

Euskal Herriari BAI esan eta egiteko unea heldu da. Hitzetatik praktikara:
Bide señaleak, mapak, mugarriak, irudiak, modu eta egitasmo ezberdinen bidez gure izatea aldarrikatu behar dugu.

**Euskal Herria garela esateaz gain, izan egin behar dugu.**

**PARTE HARTU NAHI AL DUZU**
## zure herritik lan eginaz?

Lagundu iezaguzu BAI EUSKAL HERRIARI ekimena zabaltzen, herrietan jendea bildu eta lan taldeak sortzen. Naziotasuna lantzeko modu eta esparru asko daude, guk bide horretan laguntza, bitartekoak eta euskarriak zure zerbitzura jarriko ditugu.

Eragilea antolaturik dagoen herrietako esperientzia eta egitasmoen berri izango duzu zure herrian naziotasuna landu dezazun. Lanerako gogorik izanez gero, ez izan zalantzarik jarri gurekin harremanetan.




**BAI EUSKAL HERRIARI herri ekimena**
**Egoitza nazionala:** Errota kalea 4, behera, 20.150 Billabona (Gipuzkoa), Euskal Herria. **Telefonoa:** (0034) 943 696 972
**Posta elektronikoa:** harremanak@baieuskalherriari.org
**Prentsa:** prentsa@baieuskalherriari.org
**Webgunea:** www.baieuskalherriari.org **Sare sozialak:** www.facebook.com/baieuskalherriari - twitter.com/baiEHri